*Hau ez da liburuxka arrunta. Liburuxka honek zortzi obra biltzen ditu, eta obretako bakoitza hiru elementuz osatua dago: argazki, testu, eta musika pieza bana. Bilboko zortzi barrutietan barrena, zortzi hilabetetan zehar (2014ko apiriletik azarora arte) burututako sorkuntza proiektuaren emaitza dira guztiak.*



**I K U S I**

*Barruti bakoitzeko argazki bana.*




**I R A K U R R I**

*Argazkiarekin doan testua.*



**E N T Z U N**

*CD-a, QR-kode edo estekak erabiliz.*

## **Atzealdean, ezkutuan** | *Deustu*

Hiri honek beste hiri asko ditu bere baitan, ezkutuan. Seguruenik ez zaizkigu begi-bistakoak iruditukо; sumatu ere ez ditugu egingo, baina bertan daude. Eraikinen atzealdeko patioetan, arropa zintzilikatzen eta pareko pisuko bizilaguna zelatatzen dugun leihoetatik ikus daitezke. Nahasi, zenbakaitz, aldakor eta irregularrak dira. Zuri-beltzekoak diren arren, adi egonda, entzun eta usaindu egin daitezke. Espezia eta salda bero usaina dute, eta urruneko kontinenteetako hizkuntzen oihartzuna da haien soinua, edo piano-solo batena. Eraikinen atzealdeko patioetan ez ezik, urrutiko auzoetako plazetan ere topa daitezke, eta ibai ondoko fabrika zaharretan, eta gauez, trenbide mortu, leku bazter eta parke hutsetan. Konturatzen ez bagara ere, hiri honen baitan ezkutuan bizi diren hiriek bor-bor egiten dute beren txoko bakoitzean; arnasa hartzen dute eta taupadaka ari dira. Agian, egunen batean, hiri horietakoren batek benetako hiria hartuko du, eta azala aldatu egingo zaio egun batetik bestera Bilbori. Eta ezkutuan geldituko da gaur arte ezagutzen genuen hiria, atzealdean.



**1**



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/atzealdean***

## **Emakume itsusia** | ***Basurtu/Zorrotza***

Inoiz ezagutu dudan emakumerik ederrenetakoa zen dudarik gabe, baina berak zatarra zela pentsatzen zuen. Txikitan hainbestetan deitu zioten itsusi, benetan itsusia zela pentsatzera iritsi zen. “Batzuetan, etxean bakarrik nagoenean, biluztu, logelako argiak itzali eta ispiluari begira egoten naiz denbora luzez” esan zidan, “itzalen pean politagoa da dena, ez duzu uste?”. Irribarre egin nion, eta buruarekin baietz erantzun, arrazoia ematearren, “edozer emango nuke zure logelako ispilua izateagatik” pentsatzen nuela. Baina ez nion esan, eta neurekiko pentsatu nuen argiak benetako edertasuna biluzten duela, eta edertasuna larrugorrian itsusia dela zenbaitentzat, hori izan zitekeela inork emakume hura zatar ikusteko arrazoi bakarra. Bestela ez nuen inondik inora ulertzen. Edertasuna, beste gauza asko bezala, begiratzen duenaren begietan hasten dela pentsatu, eta zuzen begiratu nion begietara, lelotuta.







***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/emakumea***

**Txikia** | ***Abando***

Ez nintzen txikia, baina neure txikitasunaz konbentzituta, lotsatu, beldurtu, kikildu, eta ez nintzen gehiago hazi. Gerora konturatu nintzen hazteko aukera oro txikitu zidala uste erratu madarikatu hark. Beranduegi konturatu, ordea. Ordurako, benetan txikia nintzen; nire txikitasun konplexua, aldiz, erraldoia.



3



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/txikia***

## **Euri-jasak** | *Errekalde*

Agurea baldar-baldar altxatu da ohetik, barruko elastiko eta galtzontzilotan. Ez du argirik piztu eta lurrean zeuden txapinekin estropezu egin du, eta kasik erori. Pasabide estura irten da, hankak erdi arrastaka, eta zurezko zoruak garrasi gupidagabeak jaurti ditu, pauso nekatu bakoitzeko ozenago eta gupidagabeago. Pasabidea zeharkatu du eta egongelan sartu da. Une horretan isiltasunaren oihartzuna txoko guztietara hedatu da, hutsaren soinua mila aldiz ezerezteraino biderkatuz. Hormetako loredun paper zaharkitu horixka izan da eszenaren lekuko bakarra, eta hark ere muzin egin dio; izan ere, Eusebioren gainbeherarekin mimetizatu eta bat eginik, hormetako papereko loreak ere aspaldi ihartu eta kolorgetu ziren, ur ezagatik baino areago, bakardadezko euri-jasek itota. Telebista piztu du agureak, bakardadea uxatu nahian, gehiago bustitzeko.



4



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/eurijasak***

## **Garabiak (hiria hazten)** | ***Uribarri***

Garabiek antzina ortziaren ertzari hazka egiten zioten, eta orain fereka leuna besterik ez, baina gorantz beti. Hazten hasi zenetik, ezari-ezarian, hiriak oztoporik ez zuen topatu goranzko bidean; deus ez. Zerua besterik ez zegoen eraikin haien gainean; alditan oskarbi, alditan ostartez beteriko zeru lausoa; egunez azul edo grisa zen zerua. Zenbat eta eraikinek gorago, orduan eta zerua lausoago, eta hiria gauez beltzago. Gau aratzetan ikus zitekeen garbi ikuskizuna, eguzkia ostendu ostean: garabiek zeruari horzka lapurtutakoa lur gainean uzten zuten landatuta; zeruaren uzkiak ziren garabiak; behinola herri izandako hiria kakazten zuten. Gorantz beti.



**5**



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/garabiak***

## **Itzulera** | ***Otxarkoaga/Txurdinaga***

Berriz ibili ditut auzoko kaleak, gaur gauean;
urteak pasa dira joan nintzela; joan zinela.

Begiak itxi eta ikusi zaitut zuri-beltzean
(e)ta hor geunden biok olgetan parkean
zu eta ni, lagun minak,
behin betiko, betiko, minaren minez banandu arte.
Zer gertatu zen, non zaude isil, nor gara orain, zer da gelditzen dena?

Hazi ahala egin genuen bidea, bakoitzak berea, urrunean.
Hautsa poltsikoetan eta oroimenean, bueltan garenean.

Ni eta zu pertsona arrotzak gara orain:
elkarrengan ikusi ezin izan genuena, gaur garenaren itzal.
Nahi ezinean, izan ginen eta garen
bi kalekume minbera
(so) aurrera, (jo) aurrera
nondik datozen ahaztu dutenak.

Zein itzulera, nora garamatza, nor gara orain, zer da gelditzen dena?



6



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/itzulera***

## **Egonean** | ***Begoña***

Gaur ez daukat burua bere lekuan. Pentsamenduek irrist egiten didate gogotik; hitzek, ihes. Ezin naiz ezerekin kontzentratu; ezin dut irratirik entzun; ezin dut ezer irakurri, ezta gauzarik arinena ere, ezta egunkariko ohar nekrologikorik ere. Edozein zaratak aztoratu egiten nau. Nahiago nuke ez banengo. Nahiago nuke bazeunde. Baina zu ez zaude eta ni egonean nago. Horregatik, gaur bezalako egunetan, dauzkadan egiteko guztiak alde batera utzi eta kanposantura etorri ohi naiz. Bertan, azken aldiz etorri nintzenetik jarri dituzten horma-hilobi berri guztiak errepasatzen ditut, banan-banan, patxadatsu; denbora pasa, eta haietako baten batean zure izen-abizenak topatuko ditudan esperantzan.



**7**



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/egonean***

## *Low cost* belaunaldia | *Ibaiondo*

Gailurrik gorenenak zeharkatuko genituela sinestarazi ziguten. Gure edozein arbasok baino altuago hegaz egin, eta urrunago iristeko hezi gintuzten. Eta irabazle izango ginen ziurtasunaz hazi ginen. Baina hegazkina hartzera joan ginenerako, guretzat, *low cost* besterik ez zen gelditzen, eta airaratuko baginen, ezinbestean, baxu hegaldatuko ginela jakinik, nahi genuen helmugara iritsiko ez ginen (senti)penaz, eta noraezari beldurrez egin beharko genuen. Horixe zen *low cost* belaunaldiko parte izateagatik ordaindu beharreko ordainsaria, eta zeuden aukerak bi besterik ez: hegan egiten saiatu edo hondoratu.



8



***https://soundcloud.com/hiri-asko-bere-baitan/lowcost***

Musikaren grabaketa 2014ko urriko 18-19 eta 25-26 asteburuetan zehar egin zen Mungiako Magic Box Musika estudioan. Grabaketa, nahasketa eta ekoizpen lanak James Morgan teknikariak burutu ditu, eta ondorengo pertsonek hartu dute parte abestietan:

**Asier Olabarrieta:** gitarra, ahotsak

**Andoni Alonso:** bateria, beatbox

**Aitzol Mugika:** baxua, tronboia, ahotsa (Garabiak, hiria hazten)

**Arantza Narbarte:** ahotsa (Euri-jasak)

**Eneko Iztueta:** ahotsa (Low cost belunaldia)

**Idoia Aurrekoetxea:** ahotsa (Emakume itsusia)

**Iraide Torrontegi:** ahotsa (Itzulera)

**Kepa Errasti:** ahotsa (Egonean)

**Unai Villena:** ahotsa (Atzealdean, ezkutuan)

**Musika pieza guztiak Asier Olabarrietak sortuak dira, hitzak Unai Villenak idatziak, eta argazkiak Aitor Gomezek eginak.**

***E s k e r r a k :***

Andoni, Aitzol, Arantza, Eneko, Idoia, Iraide eta Kepari (abestietan parte hartzeagatik), Lander Bilbaori (platerak uzteagatik), Garikoitz Balbasi (amplia konpontzen laguntzeagatik), James Morgani (grabaketako lan itzelagatik), Saioa Bacigaluperi (argazkiekin laguntzeagatik), Andres Alberdiri (testuak zuzentzeagatik), Bilboko Uriolari (Lur eta Ninberi, hedapenarekin laguntzeagatik), Okela Sormen Lantegiari (Nora, Irati eta Izarori, erakusketa antolatzen laguntzeagatik), Kaikoo Design Studiori (Iker eta Unairi, diseinu lan finagatik), Bilboko Udaleko Euskara, Gazteria eta Kirol Sailaren Gazteria zerbitzuari (babes ekonomikoagatik). Eskerrik asko baita ere hemen banan-banan izendatu ezin zaituztegun arren, proiektuan hainbat modutan parte hartu duzuen guztioi, eskerrak guztioi bene-benetan.

